Urriaren 4an

**Asisko San Frantzisko**

Oroipena

Santuen (erlijiosoentzat, 349. or.) Betikotik.

Otoitza

Oi Jainko,
Kristoren antz-antzeko egin zenduan
Asisko Frantzisko santua,
bizitza umilaren eta behartsuaren bidez;
egizu, ibili gaitezala haren bide beretik,
zure Semeari jarraitzeko
eta maitasun pozgarriz Zeugaz bat egiteko.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan

## I. Irakurgaia

*Kristo kurutzean hil zan ezkero,*
*mundua hilik dago niretzat eta ni munduarentzat.*

**San Paulo Apostoluak Galaziarrei egindako epistolatik** *Ga* 6, 14-18

Senideok: Jesu Kristo gure Jaunaren kurutzean izan ezik; Kristo kurutzean hil Niri dagokidanez, Jainkoak libratu nagiala harrotzetik, zan ezkero, mundua hilda dago niretzat eta ni munduarentzat. Izan be, erdaindua izateak nahiz erdainbakoa izateak ez deutso ardura; balio dauana sorkari barri izatea da. Bakea eta errukia arau honi lotuak bizi diranei, baita Jainkoaren Israeli be! Hemendik aurrera ez deidala inork nekerik emon: Jesusen zauri-markak neure gorputzean daroadaz-eta nik. Senideok, Jesu Kristo gure Jaunaren grazia zuen espirituarekin. Amen.

Jaunak esana.

Erantzun sal.: *Sal* 16 [15], 1-2a eta 5. 7-8. 11 (363. or.)

R/. **Zeu zara, Jauna, nire ondarea.**

V/. Gorde nagizu, Jainko, Zugan naz-eta babesten.
Hau dinotsot Jaunari: «Zu zaitut neure Jauna».
Jauna, Zeu zaitut neure ondarea, neure edontzia,
zure esku dago nire zoria. R/.

V/. Bedeinkatzen dot Jauna, aholku deust-eta emoten,
gauez be berak dau nire barrua hezten.
Begi aurrean dot Jauna eten barik;
ha eskuman dodala, ez naiteke dardaratu. R/.

V/. Bizirako bidea erakutsiko deustazu;
alaitasunez beteko nozu zeure aurrean,
zorionez betiko zeure ondoan. R/.

alElulA: Ik. *Mt* 11, 25 (379. or.)
EbanjElIoa: *Mt* 11, 25-30

Aleluia *Si* 39, 14
R/. **Aleluia.**
V/. Haren jakituriaz hitz egingo dabe herriek,
haren gorespena egingo dau herri-batzarrak. R/.

## Oparien gainekoa

Gure emoitzak ekartzean, Jauna, Zeuri otoitz egiten deutsugu:
prestatu gaizuz Asisko Frantzisko santuak hain maite eban
kurutzeko misterioa egoki ospatzeko.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

## Prefazioa

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,

Jauna, Aita guztiz santu, Jainko ahalguztidun betiko horri.
Egoki da, bai, Zu gorestea,
guretzat dozun ardura miragarria agertzen dozulako,
zeruetako erreinuagaitik euren burua Kristori eskeinita
bizi izan diran santuengan.
Holan, hasiera haretako santutasunera erakartzen dozu
barriro gizadia
eta aurretik gozatuazoten deutsazuz hemen
geroko bizi barrian izango dituan ondasunak.
Horregaitik, santu eta aingeru guztiekin
goresten zaitugu beti eta beti [esaten] kantatzen dogula:

**Jaunartze ondorengoa**
Hartu dogun sakramentuaren bidez, Jauna,
emoiguzu Asisko Frantzisko santuaren maitasuna
eta apostolu-garra imitatzeko grazia;
sentidu daiguzala zure maitasunaren ondorioak
eta balia dakiguzala gizon-emakume guztien salbazinorako.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.



Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta



beti guk Zuri eskerrak e-mo-te-a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,



Jainko ahalguzti - dun be-ti - ko ho-rri. Egoki da, bai, Zu



go-res-te-a, gu-re - tzat dozun ardura miragarria agertzen do-zu–



la-ko, zeruetako erreinuagaitik euren burua Kristori es-kei-ni-ta



bizi i-zan di-ran san-tu-en-gan. Ho-lan, hasiera haretako santuta-



su-ne-ra erakartzen dozu barriro gi-za-di-a eta aurretik goza-



tuazoten deutsazuz he-men geroko bizi barrian izango di-tu-an on-



da-su-nak. Horregai-tik, santu eta aingeru guz-ti-e-kin goresten



zai-tu-gu beti eta beti kan-ta-tzen do-gu-la: